# Iziartxo

Garitaonandia'tar Bitor apaizak
idatzitako
bi egintza'dun Antzerkia



1917'g. urtean, Donostiko Udala'k eraldutako
Antzerki Batzaldian saritua eta
"Euzkel Antzezti Irakastola'k" lenengoz
antzertua.





Donostian
Leizaola'ren irarkolan
Garibai, 28
1918

Gabiola'tar Bernardo
ertilari ospetsuari, mai//
tasunaren agerkaiz,
eskeintzen diyo
idazti au
Egillea'k



# BANAKETA

| ANTZEZNOTINAK | | | ANTZERTILARIAK |
|---|---|---|---|
| .ziartxo | 23 urtekoa | | Aramendi andere |
| Xabier | 25 » | | Beorlegi jauna |
| Mikel | 65 » | Xabier'en gurasoak eta | Egilegor « |
| Andre Joxepa | 60 » | Iziartxo'ren gurasordeak | Olaso andere |
| Apaiz Jauna | 56 » | | Etxeberria jauna |
| Silberi | 50 » | Iziartxo'ren aita | Torregarai « |
| Gorgonio | 40 » | Etxe-jabea'ren diru-zaya | Muxika « |
| Patxi | | Morroya | Arizmendi « |
| Mutil bat | | | Aranburu « |



GERTALEGI-TOKIA=DEBA TA IZIAR'EN BITARTEKO BASERRI-ETXE BAT.

# LENENGO EGINTZA

AGERTOKIAN

Eskuitik, baserri-etxearen alde bateko sarrera (etxe-aurrera ez da agiri): ate ondoan aulki bat edo bi. Atze-atzian bidea, etxe aurretik dijuana. Beste inguru guzian zelaya, ezkerretik zugaztia ikusten dala. Zugatz-artetik dator bide bat. Zugatz baten inguruan eseritokia. Zelayaren atzian soro ta mendiak.

## LENENGO AGERRALDIA

IZIARTXO bakarrik: gero MUTIL BAT

(Iziartxo josten dago zugatzpeko aulkian eserita, mai txiki bat aurrian duela)

IZIARTXO. Atzekabe arkitzen da gaur nere biotza!... Argi gutxi du neretzat gaurko eguzki diztikorrak. . . ¡ Au illuntasuna dakatana nere buruan!. . . Illuntasunaren ondoren etorri oi da argia, eta odeien ondoren eguzkia: ala dio esakun zarrak, eta ala izango da; bada «ezakun zarrak gezurrik ez». Bañan... ¿ noiz izango da?...¿noiz sartuko da nere biotz mintsu ontan zorionezko eguzki ta alaitasun argia?... ¡Ez da izango errez !. . . Zorigaitzez izan nuen jaiotza

illuna... ¡Uriko alaba! ¡sasikumea! (*erdi negarrez*) ¿Zeiñen erruz etorri nintzan ludi ontara illunpean? ¿Nun dira nere gurasoak? ¿Ez al-det iñoiz jakingo nere aita edo amaren berri?... Azkatu zazu, Jaungoiko maitea, nere biotzeko lokarri au! Zugan jartzen det itxaropen guztia. Zure naia bada nere gurasoen erruzko aztuntasuna nik eramatia, gertu nago; bada Zure emaitza izan ezkero, neri dagokidana izango da...

MUTIL BAT. (*sartzen da ezkerretik*) ¡Eup!

IZIARTXO. ¿Zer nai dezu?

MUTIL. ¿Zu al zera Mendigain'tar Iziartxo?

IZIARTXO. Bai ni naiz.

MUTIL. Tori ba. (*Ematen dio idazki bat*) Jaun batek eman dit zuri ekartzeko.

IZIARTXO. ¿Emateko bakarrik esan al-dizu?

MUTIL. Bai; baña... zuri bakarrik... eskutik eskura, ta iñork ikusi gabe.

IZIARTXO. Ondo da... Tori (*Ematen dio txakur aundi bat*)

MUTIL. Eskarrikasko... Agur (*Juaten da*)

IZIARTXO. Zuaz ondo. (*Idazkia irikitzen*) ¡Zeiñena ote da!... (*Arrituta*) ¡Gorgonio!........
(*Irakurtzen*) « Mendigain'tar Iziartxo'ri.
Iziartxo nerea: Azpaldi ontan zurekin egoteko gogo aundia det, bañan ezin zait egokitu tartetxo bat zurekin itz egiteko; ta orregatik, eskutitz onen bitartez dizut nere biotzeko txokorik onena zuretzat dala. Ezkontzeko asmua det,

bañan lenbizi andre-gaia aukeratu bear da, eta askoren aukeradun izan arren, nere begi-tximistak zugana jo dute *(Buru igiakin erakutziko du ez duala irakurtzen bere gogoz).* Nerekin Xabier'ekin bañon obeto izango zera. Irabazi aundia det aberats askoren diru-zaindari izateakin. Gañera, dakizun bezela, zuen baserri-etxeko ardurea ere nik det, ta beraz, zuen zoriona nere eskuan dago.

Erantzun lenbailen, Iziartxo, baietz esanaz ta atsegintegian sartuko dezu

Zure maitari

DOLLORTEGI'TAR GORGONIO»

*(Izketan)* ¡¡Ez, da ez. da ez!!... *(Lurrera botatzen du idazkia amorruz)*......

Lainotsu asi da gaurko eguna, ta lainotsu amaituko dala uste det... ¡Gorgonio!! ...¡Gorgonioren diruakatik Xabier'txori utzi!... ez, Jaungoikoak nai ba du... ¡Bestelakua da!... *(Begiratzen du zugaztiko bide aldera)* . . . ¡Ene! . . . Andre Joxepa dator . . . Gorde dezadan idazkia. ( *Gordetzen du)* . . Zer esan ote dio Apaiz jaunak! . . ¡Xabier!..Urte asko igaro ditugu alkarrekin anai arrebak bezela, ta anai-arrebatzat gauzkate guztiak, guraso baten seme-alabak izan gabe . . Izango ote gera egunen batean senar-emazteak!. Ori da nere naitasun osoa, eta berarena ere ala izan bear du.

## BIGARREN AGERRALDIA

IZIARTXO ta ANDRE JOXEPA

---

(Andre Joxepa ezkerreko bidetik)

IZIARTXO. ¿Badator, ama?

JOXEPA. ¡Ai ene, Iziartxo! *(nekatuta balego bezela)*

IZIARTXO. ¿Zer du ama? (*arrituta)* Ez al da berri onik?

JOXEPA. Bai, bai, bai: ezin obeak.

IZIARTXO. Ene bada! Aika asi da ta, uste nuen ezongi-aldiren bat zuela.

JOXEPA. Bai zera! . . . Arritzekua al-da ba, aikada bat egitea nere bizkarrean daramazkidan urteakin aldatz gogor au igaro ta gero?... ¡Alajaña! ¡nola ibiliko ote zerate zuek nik beste urte dituztenian!

IZIARTXO. Ala da bai... Da ¿ze berri dakar Deba aldetik?

JOXEPA. ¿Nik? ezertxo ere ez!... Berri onak zuk dituzu.

IZIARTXO. ¡Nik!

JOXEPA. Bai, zuk (*Irri-parrez*) ¿Ez dakitala uste dezu?... ¡Ai, ni! azkarra naiz. Nik guzia jakin det... Tira, Iziartxo: ¿Zeiñen idazkia zan mutil batek ekarri dizuna?

IZIARTXO. ¡E!... ez da ezer!...

JOXEPA. ¿Ez dala ezer? (*Benaz*) Ez al-dirazu esan nai?

IZIARTXO. (*Bere artian*) ¡A! au zoria! esan egin bearko' (*Joxepa'ri*) Gorgonio'rena.

JOXEPA. ¿Benetan?... da zer esaten dizu?

IZIARTXO. Gauza asko...

JOXEPA. ¡Gauza asko!... ¿bañan zer?... Ixilpekoren bat izan beardu.

IZIARTXO. (*Olde txarrez*) Ixilpeko naiz agiriko... berdin izango da, ez diot erantzungo ta.

JOXEPA. Bañan, ¿zer ai zera? Itz egin zazu garbi... ¡Ez dizu ba esango ezkontzeko konturik!

IZIARTXO. Bai andrea.

JOXEPA. ¿Bai?... ta ez al-zaitu poztutzen?

IZIARTXO. ¿Ni poztu Gorgonio'ren eskabideaz?

JOXEPA. ¡Alajaña! ¿Bai al-du edozeiñek Gorgonio bezelako senar-gairik?

IZIARTXO. (*Indartsu*) ¿Ez al-da Xabier Gorgonio bañon obea? ¿Eta beorrek ez al ziran esan atzo, Xabier bezelako senar-gairik ez detala arkituko?

JOXEPA. Atzo... bai.. atzo... atzo igandia zan, da gaur astelena.

IZIARTXO. Ta Xabier, atzo ta gaur ta biyar, igande ta astelenian, neretzat senar-gairik onena.

JOXEPA. Onena... mutillik onena... bai: ez nere semia dalako... bañan...

IZIARTXO. ¡Ze bañan!... arritzen naiz beori besteratuta ikusteaz.

JOXEPA. Ez... ez... ni ez naiz besteratu. Zuek gazteak zerate... ta... ezkondu baño len gerokuari begiratu bear diozute. Xabier'ek Gorgonio'ren diruak balituzke, oso ederki ...bañan, ez ditu...

IZIARTXO. Ez da bear ere.

JOXEPA. Ixilik zaude ixilik . . . ¿Bai aldakizu zenbat diru duan Gorgonio'k?

IZIARTXO. Ez det jakin bearrik ere. Gorgonio'k bere diru gustiyakin bañon, Xabier'ek bate gabe aldin geyago du.

JOXEPA. (*Gogapen gaiztoz*) Ta . . .¿bai al-dakizu Xabier zurekin ezkontzeko gertu dagon ala ez?

IZIARTXO. ¡Xabier! . . . Ez det ezpai txikienik ere: orretan eskier naiz; ziur-ziur nago.

JOXEPA. ¡U...m! Ez dakit ba... Iñoiz aitu diot, jayotza illunekua zerala ta... gurazorik ez dezula ta...

IZIARTXO. (*Negarrez*) ¡Ori ere esan!... ¡Ai nere Jaungoikua!... Egiya da, bai... zorigaiztoz uriko alaba naiz... ta orain iñoiz bañon geyago esagutzen det nere izatearen zoritxarra; guraso-gabeko egokera minkor ta goibeltasunez betia!... ¡Balekite zer dan guraso-gabeko izatea!...
¡Iziar'ko Ama! ¿nun dira nere gurasoak? ¿izango aldet noizbaitean nere aita edo ama ikusteko poztasun ta atsegiña?... ¡Erruki zaite nitzaz!

# IRUGARREN AGERRALDIA

LENGUAK eta MIKEL

(Mikel etorriko da eskubiko bidetik, etxearen aurreko atetik irten da bezela)

MIKEL. (*Andre-Joxepa ta Iziartxo ikusi gabe*) Bañan, nun da gure *jendea*!... Goiz guztian ez da iñor agiri. Batak, apaiz jaunagana juan bear duela; besteak josketan egin bear duela; mutilla berriz, ez dakit nora juan dan: eta etxeko lanak egiteko, agure sarra bakarrik.

JOXEPA. ¿Zer bear dezu, Mikel?

MIKEL. ¡A!... ¿or al ziñaten?... ¡Ba!... apaiz jaun batek esan zuena: Emakumeen berriketa betikotasunaren irudia dala. (*Urreratzen da*).

JOXEPA. Ez gera berriketan, ez: oarpen onak ematen ai nitzan; bada, gazteak ikasbideen bearrian arkitzen dira.

MIKEL. Ta, ¿zer du Iziartxo'k?... ¡negarrez!

JOXEPA. Oraingo gazteak utzagatik negar egiten dute.

MIKEL. Ez: Iziartxo'k ez dio utzari negar egiten. Bear ez danen bat esan diozu.

JOXEPA. Bai, zera!... Bakar-bakarrik esan diot, ezkondu baño len gerokuari begiratu bear diola; biziera nundik aterako duten, ta ...ezkontzia erreza

dala, bañan... gerokuak dirala kontuak, ta abar..

MIKEL. Ta ¿oraiñ al-da *pilosopi* oyek ateratzeko garaya?

JOXEPA. ¿Noiz ba? ¿eginda gero?... Oraiñ arte senar-gai bat izan du, bañan gaurtik baditu bi ere.

IZIARTXO. Ez andrea: oraiñ ere bat bakarrik det.

JOXEPA. ¡Bat bakarrik, e!... ta ¿gaur artu dezun idazkiak zer dio?

IZIARTXO. Nik ez det baña nai.

MIKEL. (*Ongi-naiz*) ¿Beste eskabideren bat izan aldezu?

IZIARTXO. Bai, zorigaitzez.

MIKEL. Ta ¿zeiñena?

IZIARTXO. Gorgonio'rena.

MIKEL. ¡A ta, ta, ta!... ¿Gorgonio "Karkail"ena?

JOXEPA. ¡Ze karkail! Gorgonio zaldunarena.

MIKEL. ¡Te!... dena bat.

JOXEPA. ¿Ze uste dezute? ¿ez dala ospagarri Gorgonio bezelako gizon aberats batek eskontzeko eskabidea egitea?

IZIARTXO. Neretzat mingarri izan da.

JOXEPA. ¡Mingarri!... ¡Ai, ai, ai!... Gorgonio'ren diruak ez dira ba mingarriak!

IZIARTXO. Aren diru guztiak bañon Xabier'en biotza obe.

MIKEL. Bai, Iziartxo, bai: Xabier'ekin oso ederki izan-

go zera. (*Joxepa'ri*) Ta zuri, ¿ze burutaldik eman dizu? Atzo poz-pozik arkitzen ziñan Xabier ta Iziartxo'ren eskontzakin: gaur goizean joan zera apaiz jaunagana eskontza orren goraberak antolatzeko. Ta orain... ¿zer dala ta kasketaldi ori?

JOXEPA. Atzo... ez nekian Gorgonio'k naitasun ori zuenik, ta . . . orra ba.

MIKEL. Ez: ez da Gorgonio; baizik, aren diruak, zure kasketa berotu dutenak. Ta jakin zazu, ez dala dirua bakarrik zoriona ekartzen duena. Naitasun gabe ez dago zoriontasunik.

JOXEPA. Ez da dirugabe ere.

MIKEL. Izango dute bizitzeko lain. Ta . . gañera, Iziartxo da ezkondu bear duena; ba . . . zu (*burlez*) etzera arkitzen ezkongai; ta berak esan bear du zeiñekin eskondu, ez zuk.

JOXEPA. ¡Ixilik zaude!

MIKEL. Ez al da egiya? , . . Zu ere, zure naitasunez eskondu ziñan: nik ala uste det: ¿egiya alda?

JOXEPA. Ez det berriketako gogorik.

MIKEL. ¿Ez, e?. . . gorde bada mingaña bere tokian.

JOXEPA. Zuaz emendik! . . . Naspillari izateko ez dezu saneurririk.

MIKEL. Ez ta. . . naspill-korapilluak azkatutzeko ere.

JOXEPA. ¡A. . . a! (*asarre*) ¡onelako gizonakin! . . . ¿Nork deitu dizu onea?

MIKEL. (*Irri parrez*) Iziartxo'ren aingeru-zaindariak.

JOXEPA.. Bai! .. izkirimiri ta jalosketa asko zuk beti: Obeki egingo zenduan zure lanari jarraitu.

MIKEL. Banua, banua: geyenak eginda daude: orain, abereari belar puxka bat eman. (*Iziartxo'ri*) Ez estutu Iziartxo, ekaitza igaroko da ta... Gero arte. (*Juaten da*)

IZIARTXO. Bijua ondo.

## LAUGARREN AGERRALDIA

IZIARTXO ta ANDRE JOXEPA

---

JOXEPA. Ara... Iziartxo... Aitu zazu ondo. Nik esandetan guztiya, nere itz guztiyak, zure onerako izan dira. Ziñestu zazu. ¿Zuk ez deritzatzu orrela?

IZIARTXO. Ala izango da.

JOXEPA. Bai, bai; ala da. Nere atzegiña da, gauzak garbi esatea: ez gure gizonak bezela; itz asko, berriketa asko, ta azkenian batez, utza. Nik maite zaitut, beti izan zaitudan bezela, ta orregatik nai nuke zu beti ondo ikustea... ¿Aitu al-dezu?

IZIARTXO. Bai andrea.

JOXEPA. Tira ba: izango degu garaya astiro itz egiteko, ta orain zuaz zukaldeari begiratu bat eman ta iturritik pitxar bete ur ekartzera.

IZIARTXO. Ondo da. (*Juaten da*).

## BOSTGARREN AGERRALDIA

ANDRE JOXEPA bakarrik

---

(Aulkian eserita egongo da puxka batian oldozti bezela)

JOXEPA. ¡Zer egin nezake nik orain! . . Iziartxo gaxua! . Aldi txar bat igaro-arazi diot . . ¡baña, baña! . . ¡ogei milla ogerleko ere asko dira! . . . ¡abek istillubak! . . . Iziartxo Gorgonio'kin ezkondu ezkero, guziok aberats: . . . ta . . gañera, Xabier'ek ere izango lituzke aukera onak. Bañan ¿nola tajutu Xabier'i zerbait esateko? Setatsua da, ta bildur naiz . *(zugasti aldera begira)* . . Emen da bera . . . Txoratuta dago bere Iziartxo'kin, bañan, zerbait esan bear diot . . . Kontuz ibili bearko . . . *(deyez)* ¡Xabiertxo!

## SEIGARREN AGERRALDIA

ANDRE JOXEPA ta XABIER

---

XABIER. *(ikusten ez dala)* ¡Eup! . . . Zer degu?

JOXEPA. Tira, tira . . . berandutxo zatoz.

XABIER. ¿Berandu? Ez degu ba geldi-aldi luzerik izan. *(agertzen da ezkerreko bidetik)* ¡Ola!

JOXEPA. Neketsu zatoz! ¿Ibilketa asko egin al-dezu?

XABIER. Bai, naikua, orduterdian egiteko.

JOXEPA. Aiñ asko ibili zera? . . . Eseri zaite ta legortu zazu izerdi ori.

XABIER. Ara . . . Lenbizi juan naiz Zubiaurre'ra, bañan alperrik. Atzo goizean irten zuen Pello'k Pilipinetara juateko.

JOXEPA. ¡Pello Pilipinetara!

XABIER. Bai: emen gutxi irabasten dala ta ara juan da.

JOXEPA. ¡A gaxua! Obe izango zuen gure etxera morroi etortzea.

XABIER. Orra ba . . . Ori jakin detanian, juan naiz Mendibe'ra Txomin «kankallu» ikusteko ustean, bañan ara ere alperrik: Kalipornia'ra juan da.

JOXEPA. ¡Zer diozu! . . . ¡Kalipornia'ra! Aitaren ta Semiaren . . ! ¡alajaña! ¿Ze uste dute oyek? ¿Ara juan da beriala aberastuko dirala? . . . ¡Ai, ai, ai! . . . «Amaika kirten bost pare t'erdi».

XABIER. Bai; ta nik ez dakit zer egingo duten euzkotarrak emendik urte batzuetara: bada gaztedi guzia irtetzen aida mendi-tartetik, baserritik, bai uri aldera ta bai atserrietara. ¿Nor izango degu gero baserriko lanak egiteko? Bai! . . . oraingo gazteak bañon geyago maitatzen zuten baserriya gure asabak. Gure aurrekoak mendizaleak ziran, eta ondo egiten zuten. ¿Ez al-dira bada gure mendi-tarteak txokorik egokienak paketsu ta zoriontsu bizitzeko? Mendiak bereganatzendu eta gordetzen du zerutik datorkigun ontasun ugariya, eta zabaltzen du uri, zelai ta ibar

guzietara. Mendiko ontasun gabe, uriak ez dute bizierarik. Orregatik bada, euzkotar zintzoa izateko, mendizalea izan bear da.

JOXEPA. Egikor zaude, seme: atsegiñez entzun dizut. Zu baserritarra beti; ¿ez da ala?

XABIER. Bai, ama. Jaungoikuak nai badu, Iziartxo'ren laguntasunian zoriontsu izateko asmoa det. Bealdian baño keska gutxiago izango degu.

JOXEPA. Da. . . Iziartxo aitatu dezun ezkero, esan bear dizut gauzatxo bat. ¿Bai aldakizu ziur Iziartxo zurekin ezkontzeko gertu dagon ala ez?

XABIER. ¡E! . . . jakingo ez det ba! . . . Iziartxo! . . .

JOXEPA. ¡U . . . m! ¡Ez dakit ba! . . .

XABIER. *(arrituta)* ¿Zer?

JOXEPA. Ez det esan nai . . ezetzik . . bañan . . . ¡u . m! uste det... beste batekin ere zerbait izan bear duela..

XABIER. ¿Iziartxo? *(menaz)* Ez det ziñisten: ez da ziñistuko ere nik ikusi arte.

JOXEPA. Ba . . . nik begi zolia det: Gaur ere Iziartxo'k ezkongai baten idazkia izan du.

XABIER. ¿Egiya al-da? *(aserre)* ¿Da zeiñena?

JOXEPA. Ori . . . berak esango dizu.

XABIER. ¡Berak! Iziartxo'k neri utz eman! Ez det uste.

JOXEPA. Norbait ibiliko da zirikatzen naspildu naian: bañan, iragartzen diot izango duela bere ordainpidea.

XABIER. Ez asarretu orregatik, Xabier: ta, ez esan Iziar-

txo'ri nik ezer esan dizudanik, ¿e?

XABIER. ¿Nun da bera?

JOXEPA. Iturrurira juan da. Laizter izango da onezkero.

XABIER. Ondo da. (*oso oldozkor bezela jartzen da*)

JOXEPA. Berandu izan bear du ta banua eltzia ikusi ta beste zeregintxuak egitera. (*juaten da*)

XABIER. ¡Iziartxo'k neri uts-eman! . . . ez! . . . Iziartxo neria izango da.

(Iziartxo'k abestuko du, bera ikusten ez dala, "ITXASOA"ren eresiaz. Xabier, entzuteaz batean jarriko da adipen aundiakin, ta abesti bitartean agertuko du bere poztasuna, batez ere aitutzean "nik zu zaitut maiteago".)

IZIARTXO. (*abestuaz*) Maitasunez gaixo nago
Oñetatik bururaño
Nik zu zaitut maiteago
Txoriak bere umeak baño.

XABIER. (*Iziartxo abeztutzen azteaz batean*) Bera da. (*Bukatzean*) ¡Ze abesti polita! ¿Ez ote du abestuko berriz?

IZIARTXO. (*Iziartxo'k abestutzen du bigarrenez ta Xabier'ek entzuten du alaitsu*)

Mendartean laño dago
Iziartik Debaraño
Nik zu zaitut maiteago
Gose diranak ogiya baño

XABIER. ¡Ai au poza! . . . Iziartxo neria da!

---

## ZAZPIGARREN AGERRALDIA

IZIARTXO ta XABIER

(Iziartxo iturritik dator pitxar batekin)

IZIARTXO. (*Xabier ikusteaz batean*) ¡Oi! . . ¿emen al ziñan?

XABIER. Bai; ta atsegintsu, Iziartxo! . . . ¡Ze abesti polit eta estitsua!

IZIARTXO. ¿Aitu al dezu?

XABIER. Bai, aitu det; eta pozik egongo nintzan geitxuago aitutzen ere.

IZIARTXO. ¿Zure gogokua izan al da, beraz?

XABIER. ¡Gogo-gogokua! . . . ta ziñestatzen dizut, emen nere biotzeko txokorik egokienian josita gelditu dala.

IZIARTXO. (*Irri-parrez*) ¿Orrenbesterano bai?

XABIER. Bai, Iziartxo . . . ¿Emango al-dirazu ur puska bat?

IZIARTXO. Bai, ta pozik! . . . Bizi guztian ez dezu edan ur *prexko* ta goxuagorik.

XABIER. Zure ezkutik datorkidan guzia da goxua.

IZIARTXO. Eskerrik-asko.

XABIER. (*Edaten-du ura pitxarretik*) ¡A, a, a! . . . ederra zegon!

IZIARTXO. Egarri ziñan!

XABIER. Bai, ta . . . egarria kendu ez.

IZIARTXO. Edan bada geyago.

XABIER. Ez . . . ur-egarria asetu det . . . bañan . . . beste egarri bat arkitzen da nere biotsean asegabe.

IZIARTXO. Ba . . . nere eskuan balitza egarri ori asetzeko zendagaia, pozik emango nizuke.

XABIER. ¿Bai?

IZIARTXO. ¡Nola ez! Badakizu; zure zoriona nere atsegingarri dala.

XABIER. Zure eskuan dago bada.

IZIARTXO. Nere eskuan bada, zugan daukazu.

XABIER. ¡Iziartxo! . . . ¿maite nazu?

IZIARTXO. (*Lotzor bezela*) Galdera ori neri! ... Ezagutu giñan ezkero, nere biotzean izan da zuganako maitasuna.

XABIER. Bai, bañan. . . orain arteko maitasuna izan da, anai-arrebari dagokiena, eta ni, beste maitasun baten egarri naiz.

IZIARTXO. ¿Nola izan liteke beste maitasun ori?

XABIER. Ara, Iziartxo. Beste anai-arrebak; au da; guraso baten seme-alabak diranak, ezin litezke maitatu anai-arrebak bezela baizik; bañan gu bai; gure maitasuna izan liteke . . . eskongayei dagokiena ere.

IZIARTXO. ¡Ez dakit ba . . . !

XABIER. ¡Zer! ¿ez deizkiozu orrela?

IZIARTXO. Egiya da, gure anai-arrebatasuna guztiz atsegintsua izan dala, batez ere neretzat: bada, dakizun bezela, bakardade itzaltzuan arkitu nintzan ludi ontan, eta eskerrak zure guraso erruki-

tsuei (Jainkoak onetsiko ditu) ez nitzan gelditu umezurtz. Orregatik bada, jatorri illunekua naizelako, ez naiz zure... beste maitasun orren gai.

XABIER. ¿Zer diozu, Iziartxo!

IZIARTXO. Ori da nere iritzia.

XABIER. (*Benaz*) Zuk . . . ¡beste maitasunaren bat dezu biotzean, noski!

IZIARTXO. ¿Nik?. . ¡Ori ere esan!. . . Ixilik zaude, Xabier, nere biotza zauritu nai ez badezu.

XABIER. ¿Ez al-dezu izan idazkirik gai orretzaz?

IZIARTXO. Bai: ori egiya da; baita idazki ori ostikopetu nuela ere. Nere zuganako maitasuna zintzo ta garbia da. Ez izan ezpairik orretzaz. Alperrik etorriko dira nere maitasunaren eske; oso-osoko ukapena izango dute.

XABIER. Ta ¿zergatik esan dirazu bada, etzerala nere maitasunaren gai?

IZIARTXO. Ara, Xabier. Zu jatorri garbikua zera; ni berriz, ez nere aita, ez nere ama, iñor ere nere aidekorik esagutzen ez detana . . . ¡Ai! ¡jatorri garbikua banitza!

XABIER. Jatorri garbikua zera. Jaungoikuaren alaba zera, ni bere semia bezin. Kristautasunari ta onestasunari begiratu bear diogu: ori da gure jatorria ospatu ta goraldutzen duena.

IZIARTXO. Atsegin aundia ematen didazu itz oyekin.

XABIER. ¿Maitatzen nazu bada nik nai detan maitasunez?

IZIARTXO. Biotz-biotzez, nere Xabier maitea.

XABIER. (*Eskua luzetuaz*) Emaidazu bosteko ori. (*Bata-besteari eskuak eman da*) ¡Zoriontsu arkitzen naiz Iziartxo!

IZIARTXO. Ez ni bezin, Xabiertxo!

XABIER. Jaungoikuaren naiaz bildu giñan umetatik bata-bestearen lagun izateko, ta orain elkarganatuko gera bata-bestearen zorion izateko.

IZIARTXO. Ala izan bedi, zeruko Ama laztana gurekin dala.

XABIER. Ala izango da.

IZIARTXO. Bai Xabier; norbaitek eragospenik jartzen ez badigu.

XABIER. ¿Zeiñek?

IZIARTXO. Izaten dira asko seta txarrekuak ere ta . . .

XABIER. Ta ¿zeiñen bildur zere ba?

IZIARTXO. ¿Badakizu zein dan Gorgonio?

XABIER. ¿Leon jaunaren *aministradoria?*

IZIARTXO. Bai: gure etxe-jabearen diru-zaya.

XABIER. Bai ¿ta zer?

IZIARTXO. Ba . . . gizon motrallu ori da len esan dizudan idazkia bialdu ditana.

XABIER. ¡Gorgonio! Inguru ontako baserritar gizajoen mozkin orobatzalle dollor ori!

IZIARTXO. Bai Xabier: beartsu gaxuen zapatzalle ori ausartu da neri idazki ori bialtzen. Orain erakutziko dizut, badakizu bada nik ez detala ixilpekorik zuretzat.

XABIER. Asko eskartzen dizut zindotasun ori

IZIARTXO. Emen izan bear det . . . Tori

XABIER. *(irakurtzen du aopean)* . . . *(izketan)* ¿Zer esan nai ote du onekin? *(irakurtzen)* «Dakizun bezela zuen baserri-etxeko ardurea ere nik det: ta beraz, zuen zoriona nere eskuan dago.»

IZIARTXO. Ez dakit ze asmo izango duen.

XABIER. ¡Gorgoniok idatzi ezkutitz au!. . . ¡Ta nerekin bañon obeto izango dala berakin esaten ere ausartu! . .

IZIARTXO. Ta zuk, ¿zer erantzun diozu?

XABIER. Nik, ezer ere ez: ez da erantzugo ere. Onea datorrenian ikusi bearko zer esaten duen.

IZIARTXO. Iñoiz ikusiko ez bagendu obe.

XABIER. Nik ere ori nai nuke: bañan etorriko da bai etxe-aloger eske, lenago etortzen ez bada.

IZIARTXO. *(eskutitzari begira)* «Zure maitari Dollortegi'tar Gorgonio» ¡A ze maitaria! ¡Dollortegi! ¡Ondo jarria dek bai abizen ori.

XABIER. Ta bere maixterrak geran ezkero ez al-digu zer bait egingo.

IZIARTXO. Ez gera bere maizterrak. Arriaga'tar Leon jauna da gure etxearen jabea.

XABIER. Bai ta . . . Gorgonio bere diru-zaya.

---

## ZORTZIGARREN AGERRALDIA

LENGUAK eta APAIZ JAUNA

---

APAIZA. (*zugaztitik*) ¡Jainkoak dizutela egun on bat!

(Iriartxo ta Xabier ikaratuta bezela gelditzen dira, apaiza uste gabe etorri dalako-Gordetzen dute eskutitza.)

IZIARTXO. Baita berorri ere.

XABIER. Ongi etorri, apaiz jauna.

APAIZA. ¿Zer degu gazteak? ¿Izketaldian, e?

XABIER. Bai jauna: . . . bertan bat egin degu ta . . .

APAIZA. Ondo da, ondo da. Bañan ¿Zer dezute? ¿Nere etorrerarekin arritu zerate?

IZIARTXO. Ez jauna, ez: berori ikustea beti izan da gurotzat pozkarri.

APAIZA. ¿Bai? . . . ez dakit ba! . . . Tira ¿ixilpeko gauzaren bat badezutela? ¿Ez al da Xabier?

XABIER. Ez jauna: Berorrentzat ez da etxe ontan ixilpekorik.

APAIZA. Eskerrikasko.

XABIER. ¿Esango al-diot Iziartzo?

IZIARTXO. Bai, bai: nai dezun guztia.

XABIER. Ara. Iziartxo'ri Gorgonio'k idatzi dion eskutitza irakurtzen ai giñan; ta orretzaz zerbait esaten.

APAIZA. Albiste onak badira!

IZIARTXO. Bai zera! Gizon petral ta arrosko batek zer ekarri bear digu? . . . berri onik ez.

APAIZA. ¿Ain gaiztoa al-da ba Gorgonio?

IZIARTXO. ¿Gorgonio? ¡Ez nuke nai nere senartzat beñepein!

APAIZA. ¡A! . . . ¿zerbait esan al-dizu?

XABIER. Gai orretzaz aigiñan bada izketan.

APAIZA. ¡Alajaña! *(jostallu)* ¡Iziartxo! . . . Ori zuretzat ospagarri da! Amaika neska gazte badira (ta sartxoak ere bai) zeiñekin ezkondu ez dutenak.

IZIARTXO. Ba . . amaika oyetatik batengana dijuala Gorgonio. Ni zoriontsu arkitzen naiz Xabier'ekin.

APAIZA. Emaztegai zintzo ta berebizikua, ¿e, Xabier?

XABIER. Azpalditik esagutzen det, ta orregatik aukeratu det neretzat.

APAIZA. Ederki egiten dezute. Ta ¿etxean al-dira gurasuak?

XABIER. Aita ez dakit, bañan amak or izan bear du. Deituko diot. *(juaten da etxe barrenera)*

APAIZA. Ta ¿nola ez da agertu neregana Andre Joxepa?

IZIARTXO. ¡Ai Jauna! Andre Joxepa'k bira eman dio lengo egoerari. Gorgonio'ren diruak naspillatu dute.

APAIZA. Arritzekua da. Ba, nik, agindu nuan bezela bete ditut nere eginbideak. Irakurriko dizut izparringietan jarri nuen iragarpena. Ara: (*Izparringia ateriaz ta irakurriaz*) «Orain ogei ta iru urte, orrillaren amabost'garrenian utzi zuten «Mendigain» baserri-etxeko atarian aur jayo berri bat: ziñezkaitzat bakar-bakarrik zuela

«Iziar» izena gerriko janzkian idatzita, ta beste zapi-zuri baten S ta Z izkiak. Egun artan batayatu zan, bada-ezpada, iñork etzekielako batayatua zan ala ez, «Iziar» izenakin Deba'ko Eleizan. Ta batayatu ta gero bear zan baimenarekin baserri-bertako andre-gizonak gelditu ziran ume orrekin, beren alaba bat bezela azteko: ta orain arkitzen dalako ezkontza on bat egiteko aukeran, lenbizi jakin nai litzake bizi ote dan bere aita edo ama.»

IZIARTXO. (*biotzez*) Bai jauna; ori da nere naitasun aundiena. Ta ¿billakatu al-da zerbait.

APAIZA. Ezertxo ere ez.

IZIARTXO. ¡A! ¡au zorigaitza!

APAIZA. Ba . . . amabost egun igaro ziran iragarri nuen ezkero, ta nik uste det onezkero ez degula izango zure gurasoen berririk.

XABIER. (*asarre*) Bereala etorriko dala. Nik ez dakit ze kasketaldik eman dion gure amari.

APAIZA. ¿Zer ba?

XABIER. Iziartxo ta ni naspillatu nayan dabil.

APAIZA. Zuek naspillatutzeko zeregin aundiya artu bear dik. Ez eztutu orregatik.-Ba, Iziartxo'ri esaten ai nitzan ez degula izango onezkero bere gurasoen berri: bañan, ez dala bearrekua ere ezkondu nai izan ezkero.

IZIARTXO. (*atsekabez*) ¡Nere jatorriya jakin gabe!

APAIZA. Ez dezu orregatik keskarik izan bear.

Zure jatorriya, gurasoak agertu ez arren, besterena bezin garbiya da. Jaungoikuagandik datorkigu izatea; Jaungoikuak sortuak gera, Bere mirabe zintzuak izateko; au da, bere agindupean bizi ta bere legiak beterik, Beragan arkitutzeko egizko zoriontasuna. Beraz, guziok gera seme-alaba berdiñak ludi ontara etortzean, ta bein ludian ezkero, biziera ona da jatorririk onena: orretan ezagutzen dira Kristotarrak, izakera ta eginkizunetan.

## BEDERATZIGARREN AGERRALDIA

LENGUAK eta ANDRE JOXEPA: gero MIKEL

---

JOXEPA. (*atea irikitzean*) ¡Apaiz jauna ere emen degu! Ongi etorri.

APAIZA. Kaixo Andre Joxepa! ¿Ondo al gera?

JOXEPA. Ondo esan bearko: Jeikitzen gera ta . . . Bañan eseri bedi: Iziartxo: ekarri zazu aulki bat.

APAIZA. Ez, ez ekarri: Emen ez al-degu ba aulki garbi ta txukuna? Gañera, emen zugazpian bañon obeto iñun ere ez.

JOXEPA. Tira ba: berorren gogoz bada, eseri bedi bertan. (*Eseriko da apaiza; ta besteak, eserita nai zutik aukera dan bezela*).

APAIZA. Ta ¿non degu Mikel?

JOXEPA. Or, etxe-osteko soroan ai da lanian. Esayozu

etortzeko, Xabier.

XABIER. Beriala. (*Juaten da etxe-aurrera eskubiko bidetik ta bera ikusten ez dala deituko dio Mikel'i beardanean.*)

JOXEPA. Nekatuta egongo da berori, ta, ¿zerbait nai aldu? sagardo puxka bat edo . , .

APAIZA. Ez, ez det bear ezer ere.

JOXEPA. Ur-ardoa ere goxo puxkatekin ona izaten da.

APAIZA. Eskerrikasko.

XABIER. (*Barrenetik Mikel'i deitzen*) ¡Eup! . . . Etortzeko.

APAIZA. Itxuraz pijo arkitzen zera.

JOXEPA. Ba . . . zutik gabiltzan artean, aurrera.

APAIZA. Zuri urteak aztuntasun gutxi ematen dizute.

JOXEPA. Oraindikan gaztea naiz, jauna.

APAIZA. Bai: Matxalen Errotako bañon gazteago.

JOXEPA. ¡Josu! . . . Aura irurogeyan gora dijua.

APAIZA. Ta zu ¿zenbat berago?

JOXEPA. Berago . . . ez . . . bañan . . .

XABIER. (*juan dan lekutik etortzen da*) Badator (*Mikel'gatik*)

APAIZA. ¡A! ze gazte lirain ta zintzoak! (*Iziartxo ta Xabier'gatik*)

JOXEPA. Bai; . . . noizean-bein naigabeak ere ematen dituzte bañan . . .

APAIZA. Bai zera! ¿egiya al-da, Xabier?

XABIER. Ez det uste nere gogoz iñoiz naigaberik eman diotenik.

MIKEL. (*Xabier etorri dan lekutik*) ¡Egun on jauna!

¿Baserri aldetik?

APAIZA. ¡Kaixo Mikel! Zu beti langille.

MIKEL. Osasuna dan artean egin baarko: bestela, «alperkeria, askoren ondamendia».

APAIZA. Ola da, bai

MIKEL. Gurasoak izan bear dute seme-alaben irakaslariak; bada, «zer ikusi, ura ikasi». ta «nolako aita, alako seme».

APAIZA. Ederki: Seme-alabak ondo asten dituzten gurasoak, zartutzean izango dute laguntasuna.

MIKEL. Bai jauna: «jakiteko artzen, ikastzazu ematen».

APAIZA. Ori da.

JOXEPA. Jauna; onek ez du azkenik esakun zarrakin asi ezkero.

APAIZA. Ondo egiten du. Esakun zarrak asko erakusten digute.

MIKEL. Bai jauna: «Esakun zarrak, gezurrik ez».

JOXEPA. Naikua da, gizona: apaiz jaunak ere ez du izango astirik luzaro egoteko ta.

APAIZA. Amabietako juan bear det.

JOXEPA. Ba, onezkero laizter dira.

XABIER. Beok zerbait esan bearra izango dute ta gu baguaz.

APAIZA. Nigatik ez: ez degu ixilpekorik.

JOXEPA. Bai; dijuazela; zeregintxuak ere badituzte ta.

XABIER. Agur ba; ta agindu jauna.

IZIARTXO. Agur jauna, ta eskerrikasko.

APAIZA. Ez de ezeri: agur gazteak.

*(juaten dira Iziartxo ta Xabier)*

JOXEPA. Neri itxoiten egongo zan berori atzo ta gaur, noski:

APAIZA. Bai: galdetu diot Iziartxo'ri nola etorri etzeraten.

JOXEPA. Orra ba: asmoa banuen, baña . . . . . . oraindikan etzala laiztertu bearrik, eta . . .

MIKEL. Etzenduan ori ezaten orain iru egun. Orduan estu ziñan apaiz jaunari itz egiteko.

JOXEPA. Ta ¿zer nai dezu ba? . . . denak batera egitea?

MIKEL. Ez denak batera ez; «Pizkor ta eraz, usuak egiten du egaz»: Nik esan nai det, zuk . . . ez dezula burua lengo lekuan.

JOXEPA. ¿Nun det ba?

MIKEL. ¿Nun? . . .. Lenago, Xabiertxo' gan, eta orain Gorgonio'ren diru tartean.

JOXEPA. ¡Utikan! ¡agure txatxu ori!

APAIZA. Tira, tira, ez asarretu.

JOXEPA. Ez jauna: asarratu ez; bañan iñoiz ere ez du gauza bat esango dan bezela. Nik esango diot egi-egiya. Beorrek dakin bezela, Iziartxo ta Xabier alkarrekin ezkontzeko ustean ziran; bañan, iñork uste gabe, Gorgonio'k ere egin dio eskabidea, ta . . jakiña da, beste azkori bezela, Iziartxo'ri ere onirizten zaizkio Gorgonio'ren diru ugariak.

MIKEL. ¡Geldiro, atxua, geldiro! ni ere jakitun naiz ta,

zuk uste gabe.

JOXEPA. ¿Gezurra al-da? Dirua guzien gogokua da

MIKEL. Ta . . ¿dirua al-da ezkon-gaia?

JOXEPA. Ezkongaia . . . ez, bañan bai ezkon arazia.

MIKEL. Apaiz jaunak adiraziko digu *dotriña* ori.

APAIZA. *(parrez)* Ezkontzeko, amairu diru bakarrik bear dira: Apaizak, geyago ez du onetsitzen; da, txakurtxikiak badira ere berdin.

MIKEL. (Ederra eman dio.)

APAIZA. *(jeikitzen da)* Ta orain, ikusten detanez, etzaudete batera ezkontza-gaian, ta arazo ori neria ez dan ezkero, banua etxe aldera, berandu da ta.

JOXEPA. ¿Beste-gabe al-dijua, jauna?

APAIZA. Nik ez det emen beste zer eginik: ez da nere arazoa ezkongaiak aukeratzea: ori, onuradun diranak egin bear dute, ta apaizak onetsi ezkontzeko naikide diranak. Agur bada.

JOXEPA. Barkatu bada gaizki esanak, ta . . . beste bat arte.

APAIZA. Nai dezuten arte.

MIKEL. Agur jauna: ta badaki nun gauden da . . agindu.

APAIZA. Orobat; agur. *(juaten da)*

---

## AMARGARREN AGERRALDIA

MIKEL ta ANDRÉ JOXEPA

---

MIKEL. (*asarre*) Zugatik apaiz jaunak alperrikako bidaldia egin du.

JOXEPA. ¿Nigatik?

MIKEL. Bai, zugatik. Ori zetorren, Iziartxo ta Xabier'en eskontzako eginbearrak eratutzeko ustez.

JOXEPA. Ta nik zer egingo diot ba?

MIKEL. ¿Zuk? . . . Gorgonio'ren diruak emandizuten korapillua azkatu.

JOXEPA. ¿Ez al-da ba Gorgonio beste edozein bezin opagarria?

MIKEL. Ez! . . . Da. . . «Aberats izatea baño, izen ona obeago.»

JOXEPA. Gorgonio zaldunak izen ona du.

MIKEL. ¡Zalduna! . . . Bai; amaika *zaldu* du orrek!

JOXEPA. Baita erosi ere.

MIKEL. Bai: zu bat.

JOXEPA. Zaude ixilik!

MIKEL. ¿Ixilik? . . . ¡Gorgonio! . . . Zikoitzkeri ta dollorkeria baño besterik ez duen gizon petral ori! . . .

JOXEPA. ¿Gorgonio zikoitza?

MIKEL. Galdetu iozu Iturrioz'ko Kepa'ri, ordañean emandako diruakatik euneko amabost kentzen

duenari ze izen emango dion, ¡arranopola!

JOXEPA. Bai . . . berriketak.

MIKEL. Ze berriketa! . . . Gañera, Iziartxo'k ez du nai; ta badakizu, «nai-gabeko eskontzea, neke ta kaltea.»

*(Joxepa'k ikusten du urrutitxora Gorgonio)*

JOXEPA. Ixilik zaude!

MIKEL. (*ulertu gabe zergatik esan dion*) Ez naiz ixildukó.

JOXEPA. ¡Ixiltzeko! Gorgonio dator da.

MIKEL. (*izututa*) ¡E!

JOXEPA. Bai: an non datorren, zugatz-artetik gora.

MIKEL. ¡Ze ote dakar! . . . Gauz onik ez, noski.

JOXEPA. Kontuz orain mingaiñakin.

MIKEL. Nik artuko dizut zori kontua.

JOXEPA. ¡Ixo!

(*Joxepa Gorgonio datorren aldera begira, ta Mikel oldozkor.*)

## AMAIKAGARREN AGERRALDIA

LENGUAK eta GORGONIO: gero XABIER

---

| | |
|---|---|
| JOXEPA. | (*Gorgonio ikusten ez dala*) Aurrera, Gorgonio. |
| GORGONIO. | Bai, banua |
| JOXEPA. | ¿Zer degu? |
| GORGONIO. | (*agertzen da*) Ibiltaldi bat egitera. |
| JOXEPA. | Osasungarri da inguru ontatik ibiltalditxo bat egitea. |
| MIKEL. | (*beregain*) Iziartxo ingurutik. |
| JOXEPA. | Ongi etorria. |
| GORGONIO. | Eskerrikasko . . . ¡Kaixo Mikel! |
| MIKEL. | ¡Eup! (*oarkabe*) |
| GORGONIO. | ¿Ondo gera, ondo? |
| MIKEL. | Emen gaude . . . Egualdia ere . . . ez dago txarra ta . . . |
| GORGONIO. | Ez: ederra erbitarako. |
| MIKEL. | ¡Erbiyak! . . . ¡Ka! . . . Azeriyak orain (*ziplaka*) |
| GORGONIO. | ¡Azeriyak! |
| JOXEPA. | (*pizkor*) ¿Zerbait artuko al-dezu? |
| GORGONIO. | Ez: eskerrikasko. |
| JOXEPA. | Iya onezkero baskari ordua ere badegu ta, pozik emango dizugu gelditu nai badezu. |
| MIKEL. | (*beregain*) ¡E! ori bear genduke orain! |
| GORGONIO. | Eskerrikasko, Andre Joxepa. |
| XABIER. | (*Atea irikitzeaz batean, Gorgonio ikusi baño len*) |

Aita. (*Gorgonio ikustean geldituko da izututa.*)

MIKEL. ¿Zer nai dek?

XABIER. Ezer ez. (*Gorgonio'ri begira, begirakun illunaz.*)

GORGONIO. ¿Ni ikusita izutu al-aiz?

XABIER. Baliteke.

GORGONIO. ¿Ez al-nauk bada ezagutzen?

MIKEL. ¡Geyegi!

GORGONIO. ¿Zer esan nai dek orrekin?

XABIER. Esagutzen zaitudalako dizut: «Beren egipenez gorrotogarri danak, izango ditu noiz-baitean neko ta lanak».

JOXEPA. Ixilik zaude, Xabier.

GORGONIO. Eman bearko dek itz oyen atzalpena. (*zemattuaz*)

XABIER. Zure nazkagarri ta gizatxarkeriak erantzungo dizute.

GORGONIO. (*Xabier jotzera-egiñaz*). ¡Neri esan ori! (*Mikel'ek geldi-araziko du.*)

MIKEL. (*Gorgonio'ri elduaz*) ¡Geldi! geldi! . . . ez degu burrukarik bear.

GORGONIO. (*zemaiz*) ¡Etorriko dek garbai-eguna iretzat!

XABIER. ¡Baña Iziartxo ez dek izango iretzat!

---

## LENENGO EGINTZA'REN AZKENA

## BIGARREN EGINTZA

### AGERTOKIA LEN BEZELA

### LENENGO AGERRALDIA

MIKEL (bakarrik)

(Bi bikoitz abarka ditu onduan, Xabier ta Iziartxo'rentzat, ta lokarriak sartzen ai da.—Bitartean abestutzen du "Basa-txoritxu"ren eresiaz.)

Mendi tartean gordetzendira
Gure oitura garbiak
Gure baserri-etxeak dira
Euzkeraren zaindariak
Mendiak ditu eguzkia ta
Aize osasungarriak
Beraz gaixoak indartutzeko
Sendakai miragarriak.

*(Izketan)*

Lana badegu pranko, bañan aldi ona ere bai. Ta ¿zergatik ez? Osasun ona; mutil gaste asko baño kementsuago, Jainkoari eskerrak; pake osoa; andre etxekoya; ta orain seme-alaba eskonberriak ere bai, bata baño bestea obeagoak. ¡Zorionean ezkondu dira! Eskerrak neri, ez nere atxuari . . . Ara: ez nere seme-alabak di-

ralako, bañan . . . egingo nuke, Ondarrabi'tik asi ta Matxitxa'ko bitartean ezetz arkitu beste bi. Zerutik jetxitako aingerutxo bi dirudite. Onbidetsuak, sen aundikuak, buru askar ta argitasun aundikuak, eginkisun guztietan arduratsuak . . . ¡Nere mutilla! . . . ¡bikaña da gero! . . . bai lanerako, baita ere euzkal-jolasetarako: pelotaria, onenetarikua: ¡aurreskuan berriz! . . . Zumayako Euzkel-jayetan ere, *¡lumero uno!* . . . Ondo gogoratzen naiz . . . Jauregiarteko zaldunak adirazi zion bere alaba ateratzia nai lukela aurreskuan, bañan . . . ¡bai zera! . . . Iziartzo an izan ezkero beste bat atera? . . . ez . . . Iziartxo atera zuen: da, ¡ura zan dantzan egitea! . . . Enparantzan zeuden guziak aboa zabalik biyeri begira. Bai; amaika aldi zoriontsu eman dirate, ta emendik aurrera geyago emango digute . . . ¿Nun ote dabiltza berak? . . . Ezkon-ibilketa egin gabe ez dala iñor gelditzen da, juan ziran larunbatean Donosti'ra. An ibiliko dira alaitsu baster guziak ikusten, bañan azpertuko dira egun asko igaro orduko. Ez dira iñun ere arkitzen aita ta ama onduan ez badira, . . . ta, ni ere ez Xabier ta Iziartxo gabe.

## BIGARREN AGERRALDIA

MIKEL ta ANDRE JOXEPA: gero PATXI

---

JOXEPA. (*Pozez, eskuan idazki bat dakarrela*) ¡Mikel! idazkia degu! Xabier ta Iziartxo'rena izan bear du.

MIKEL. ¿Zeiñena izango da ba, gure seme-alaba kutunena baizik?

JOXEPA. Tori, ta irakurri zazu. (*Ematen dio*)

MIKEL. (*Idazkiari begira*). Xabier'en idazkuna da . . . . Eseri gatian, patxadan irakurtzeko.

(*Irakurtzen*) «Donostitik Dagonilla'ren 10'g Guraso laztanak: Atzo illunabarreko bultzian eldu giñan Donosti eder ontara. Geltokitik ostaturaño etorri giñan tximist-gurdian. Berandutxo zan ta lenbiziko . . . apariya, ta ederki apaldu ere. Gero erriyari ikustaldi bat emateko ustean atera giñan kalera. ¡Ze gauza ikusgarriak! Bulebar dioten ibiltokia jendez josia zeuen: ¡bai soñulariyak ere bikaiñak! ta . . . arritzekua; iñork ere etzuen dantzarik egiten!» (*Parrez*) ¡Ja, ja, ja! . . . Kontziertua izango zan da!

JOXEPA. Ayek Donostian ere dantzan egiteko gogoakin.

MIKEL. Bai . . .

(*Eskubiko bidetik dator Patxi, txistuetan, belarretako otarra ta itaiakin: Mikel ikustean itz egiten du*).

PATXI. Nagusia: belar puxka bat ebakitzera nua.

MIKEL. Bai; ondo egingo dek.

PATXI. (*Bere artean*) Gaur egun alaia degu. (*Juaten da ezkerretik*).

MIKEL. Guazen aurrera . . . ¿Nun giñan?

JOXEPA. Ba . . . bulebarren . . . kontziertuan.

MIKEL. ¡A! bai: u, u, u . . . emen gera: (*Irakurtzen*) «Bulebarretik Kasiñora. ¡Auxen bai dala jai-etxe ederra! dena argiz ta jendez betea: an ere soñu ederrak aitu ditugu. Antxen gaudela asi ziran tiroka ta Iziartxo ikaratuta gelditu zan; bañan gero ondo pozik egon giñan zuzko-txirringak ikuzten»

JOXEPA. ¡Gaxuak! Ayek ederki dabiltza. Neri eskerrak, ez zuri.

MIKEL. Tira, tira; aurrera.

JOXEPA. Tira ba. (*irakurtzen*) «Gaur goizean goiz jeiki ta mesa ondoren *Kontxa* aldera juan gera: jende asko zan ureztatzen, ta nik ere pozik emango nion busti-aldi bat gorputzari, bañan Iziartxo bildur izan da».

JOXEPA. Ondo egin du. ¡Itotzeko ere!

MIKEL. Bai: ¡Xabier'ek ez dio emango naigaberik Iziartxo'ri! . . . An ibiliko dira biyak txantxangorria bañon argiyago, bata-beztearen pozkarri.

JOXEPA. Orretarako ezkondu dira.

MIKEL. Neri eskerrak.

JOXEPA. Tira, tira: ¿irakurri al-dezu dena?

MIKEL. Ez: guazen aurrera.

(*irakurtzen*) «Gero ikusi degu *estropada* ¡An zan jendea! Gastelu, Kaya, Igeldo, Kontxa ta beste inguru guziak beteta zeuden: txalopetan ere eundaka. Jarri ziran lau saritxalopak errenkadan agindu aren zai; ta eman ziotenian, ¡ura zan indar-neurketa! bazan indarra mutil gazte ayen besoetan! Au izan da guretzat jaikunik ederrena. Bazkaldu degu patxada ederrian, ta arratzaldian izan gera Antzokian; ¡ze ederki igaro degun euzkerasko antzerki-jai txit polita ikusten! Badira Donosti ontan antzerkilari trebe ta pizkorrak: ¡ze ederki asmatu ta garbiro itz egin duten! -Andik etorrita jarri gera idazki au egiten. Ez degu bada beste gairik. Biyar arratzaldian iruretako bultzian juango gera, ta orduan edestuko ditugu beste gauza asko.

Agur bada, ta biyar arte.

Biotz-biotzez maitatzen zaituzten semo-alaba.

XABIER ta IZIARTXO».

MIKEL. ¡Gaxuak!

JOXEPA. Naikua egin dute. . . Agertu dute zintzoak dirana.

MIKEL. ¡Iziartxo ta Xabier! . . . Beste bi ludi guzian ere ez. . . ¿Orain etzera garbaituta egongo Iziartxo Xabier'ekin ezkontzeaz?

JOXEPA. Ez: Jainkoari eskerrak eman bearra badegu.

MIKEL. Egunik ez da igarotzen nik eman gabe.

JOXEPA. Ta ¿noiz biurtuko ote dira?

MIKEL. Biyar ba: ¿ez al-dezu aditu?

JOXEPA. ¿Biyar? Orduan gaur etorriko dira, idazki ori atzo egingo zuten da.

MIKEL. Alaxen da izan ere ! . . . ( *idazkiari begira* ) Amargarrenian idatzita dago, ta atzo zan amargarrena. Gaur goizian irtengo zuen idazki onek Donostitik.

JOXEPA. Ba; emen dira laister! Ez al-du esaten iruretan aterako dirala?

MIKEL. Bai.

JOXEPA. Ba, oingo badira Zarautz aldian. Banua, etorri baño len beren gela ta tresna guztiyak ondo jartzera.

MIKEL. Bai; zuaz: nik bitartian abarkak gertu jarri bear ditut.

(*Juaten da Andre-Joxepa*)

## IRUGARREN AGERRALDIA

MIKEL: gero GORGONIO

---

Abarka politak dira gero! . . . Onek Iziartxo'rentzat . . . ta besteok Xabier'entzat. Ondo pozik ikusiko dituzte. Etxean ditut abarka-mantarrak ere. Gañera, Xabier'entzat serazko gerriko bat, ta Tolosa'ko txapelik ederrena: ta Iziartxo'rentzat artillezko gona ta buru-zapi zuri ederra . . . Zorroari utzuna aundia egin diot, bañan ori ta geyago ere merezi dute.

GORGONIO. (*Ezkerretik: Begirakun illuna du ta ausarkeriz itz egingo du*) ¡Arratzalde on!

MIKEL. (*Sutik eta alai*) ¡Kaixo Gorgonio! ¿Zer degu?

GORGONIO. Zuek ikustera.

MIKEL. Eskarrikasko. Poz aundia artzen degu zu ikusteakin.

GORGONIO. ¿Bai; e ?... (*bere artean*) Gaur ez dezute artuko.

MIKEL. ¡Booo . . . ! Izango ez da ba ! . . . zuk etxearen ardurea euki ezkero! . . . Ta berebiziko orduan etorri zera: zurekin egon bearra nuen, ta zu etorri ezkero deitu bearrik ere ez.

GORGONIO. ¿Zer nai dezu?

MIKEL. Ba . . . lengo illeko ekaitzak etxe gañeko tella zar guztiak zatitu zituen, ta euriya danian zapaitik bera parra-parra ura etortzen da, ta . . . nai genduke tellatua puxka bat berrizkatzea, Leyoak ere bear-bearrian arkitzen dira.

GORGONIO. Ta ¿besterik zer? (*beregain*) Gero etorriko da zaparradea.

MIKEL. (*beregain*) Ez du izan bear aldi onik. (*Gorgonio'ri*) Ba . . . besterik . . . zukalde ondoko gelatxua nai genduke puxka bat txukundu, eskonberriaren bizitegia izango da ta. . .

GORGONIO. (*beregain*) Ez det uste.

MIKEL. (*Gorgonio'ri begiraka*). . . Gaur . . . zerbait aldezu? . . . Etzaitut ondo arkitzen.

GORGONIO. Iñoiz bañon atsegin geyago det.

MIKEL. Ez dezu ba itxurarik. . . Esan leike gaxorik

zaudela edo. . . okerren bat izan dezula.

GORGONIO· Okerra zuentzat izango da.

MIKEL. ¡Okerra guretzat! . . . Jainkoari eskerrak atsegiña baño besterik ez degu

GORGONIO. Ez luzaroko.

MIKEL. *(susmo txarrakin)* Arrituta naukazu, Gorgonio, zure itz illunakin.

GORGONIO. Orain artekoak illunak izan badira, argiyak ere aituko dituzu.

MIKEL. *(arrituta)* ¡Ze aitu bear ote degu!

GORGONIO. Ez tellarik ta ez leyorik berrituko da zuentzat, ez da gelarik txukundu ere.

MIKEL. Orrela bada. . . dauden bezela jarraituko degu, eta ez gera asarretuko, gizona.

GORGONIO. Ez dezute jarraituko dauden bezela ere.

MIKEL. ¡Bañan gizona! . . . itz egin zazu garbi ta argiro. ¿Zer dala ta ez degu jarraituko etxe ontan?

GORGONIO. Irurogei milla erreallen nai badezute erosi, jarraituko dezute bestela ez.

MIKEL. *(larritzen ai da)* ¡Irurogei milla errial, nundik ateratzeko guk!

GORGONIO. Ez dezute bada beste biderik: edo erosi edo kanpora.

MIKEL. Bañan Gorgonio; ¿nerekin jolastutzera etorri al-zera?

GORGONIO. Ez det jolaserako gogorik. Entzun dezun bezela da. Zortzi eguneko epea dezu.

MIKEL. (*geyago larrituta*) ¿Zer dala ta bañan?

GORGONIO. Ez det esan bearrik.

MIKEL. Alde guztietatik zoriontasuna bañon besterik etzan gaur etxe ontan, ta orain ¡zer egiteko!

GORGONIO. Zuek jakingo dezute.

MIKEL. Esan zazu, Gorgonio, zer egin dizugun.

GORGONIO. Esan dizut, ez dakatela esan bearrik.

MIKEL. Zure kaltez ezer egin badegu, gertu gaude ordaindutzeko.

GORGONIO. Ez dago ordainpiderik.

MIKEL. ¡Barkatu bada, Gorgonio!

GORGONIO. Esan dizut ez dezula beste biderik; edo erosi, edo kanpora.

MIKEL. ¡ Ai nere Jaungoikua ! . . . ¡ zer egingo dute Xabier ta Iziartxo'k!

GORGONIO. (*bere gain*) Iziartxo . . . Or dago iltzia. (*Mikeli*) Badakizute: Zortzi egun barru, edo dirua, edo kanpora.

MIKEL. Eta ¿ez al-dirazu esango zergatik dan?

GORGONIO. Nik nai detalako.

MIKEL. ¡Zer esango dute ausokuak, etxetik ateratzen gaituztela jakiten dutenian!

GORGONIO. Nik ez det orrekin zer ikusi.

MIKEL. (*indartsu*) Bai, badezu. Gizonak *errazoya* eman bear du.

GORGONIO. Nik ez dizut bada emango.

MIKEL. Etzera orduan gizona.

GORGONIO· Kontuz itz oyekin.

MIKEL. !Ze kontuz ta ze . . . arrayo! . . . ori ez da gizonak egin bear duena!

(Etortzen da eskubitik Joxepa, ikaratuta Mikel'en didarrak entzuteaz)

## LAUGARREN AGERRALDIA

LENGOAK eta ANDRE JOXEPA

---

JOXEPA. ¿Zer degu? ¿zer gertatzen da. . . ¡Mikel! ¿zer darabizute?

MIKEL. ¿Zer darabigun? . . . Galdetu zayozu orri.

JOXEPA. ¿Zer izan dezute, Gorgonio?

GORGONIO. Nik ezer ez.

MIKEL. ¡Ezer ez! . . . ta, etxetik kanpora ateratzia nai du!

JOXEPA. ¿Zein etxetik kanpora?

GORGONIO. Zuek erosi nai ez badezute.

JOXEPA. ¿Gu etxetik kanpora? (*arrituta*) ¿Bañan egiya al-da?

MIKEL. ¡Ta ezer ez dala ezango du!

JOXEPA. ¿Zer dala ta, Gorgonio?

GORGONIO. Nere gogua orrela dalako.

JOXEPA. ¡Ene bada! ¡Jaungoiko maitea! . . . Banekiyan ¡Ai ai ai! . . . ¡Nere esana egin balitza! . . . (*Mikel'i*) Esan zazu orain ere: ¡Neri eskerrak!

MIKEL. Bai, esango det: ta len bañon gogotsuago, orrelako zitalkeri ta zapokeriak ikusi ta gero.

GORGONIO. ¿Zitalkeriak? . . . Datorren astelenarako, dirurik ez badezute etxea erosteko, billatu bearko dezute beste bat.

JOXEPA. ¡Dirua! . . . ¡dirua! . . . ¡nundik ateratzeko! Zuk badakizu etxea erosteko lain diru ez deguna.

GORGONIO. Billatu bada beste bat.

JOXEPA. ¿Zergatik bañan, Gorgonio? Badakizu nik ez detala errurik.

GORGONIO. Naikua da. Badakizute zer egin bear dezuten, ta banua.

MIKEL. *(Gorgonio'ren aurrez jarrita)* Etzera juango arrasoyrik eman gabe.

GORGONIO. ¡Ez naizela juango!

MIKEL. Ez: ta gañera, jakin bear degu Leon jaunaren agindua dan ala ez, bera dalako etxearen jabea.

GORGONIO. Nere naimena ta Leon jaunarena bat dira.

JOXEPA. Ez det sinisten. Leon jaunak ez du ain biotz gogorrik.

MIKEL. Beraren agindu gabe, ez gera aterako.

GORGONIO. ¿Ez: al-dakizute ni naizela bere araule ta diruzaya?

JOXEPA. Bai: ta txintxo-txintxo ordaindu dizugu urte guztietan etxe-sariya.

GORGONIO. Aurrorakuan ez dezute neri ordaindu bearrik izango.

MIKEL. Jabearen egindu gabe ez det nik etxe ontatik irtengo.

GORGONIO. Bearko.

MIKEL. Ez. Ekarri bearko dezu Leon jaunaren agindua.

GORGONIO. Nik ematen dizut bere izenian.

MIKEL. Ez du indarrik zure itzat. Idazkiz ekarri bearko dezu. Gañera . . . ¿baserritarrak geralako uste dezu ez dakigula lege konturik? ¿Zuk esatia baño besterik ez al-dago guk etxetik kanpora irten bear izateko? ¡Ez, Gorgonio, ez!

JOXEPA. Errasoya du Mikel'ek. Guk etxe-sariya ordainduta daukagu, ta urtea igaro arte zuk ez dezu eskubiderik gu kanpora botatzeko.

GORGONIO. Nere agindua naikua ez bada, ordu asko igaro baño len izango dezute jabearena ere, . . . ta zuk eskatzen dezun bezela, idazkiz. Agur.

(*Juaten da ezkerretik*)

## BOSTGARREN AGERRALDIA

ANDRE JOXEPA ta MIKEL

---

MIKEL. (*Gorgonio juan dan alderuntz begira*) Zuaz bai, zuaz, . . . gizon makur, zital, zikoitz ta dollorra bañon besterik etzerana!

JOXEPA. ¡Ai, Mikel, Mikel! . . . gure zoriontasunak igez egin du. Alaitasun aundiyakin esnatu gera gaur goizean, bañon ez dakit nola amaituko de-

gun gaurko eguna. . . Bildur nitzan zerbait ekarriko ote zuen bere ondoren eskontza orrek.

MIKEL. ¡Dana dala! Xabier ta Iziartxo'ren ezkontza aukerakua ta egokia izan da. Gorgonio, gizon petral ta txotxolo orrek ez du gaitasunik iñoren senar izateko.

JOXEPA. Ez: gaiztua da. Bañan ¿zer egiteko guk orain?

MIKEL. ¿Jaungoikuak ez ote digu bada lagunduko?

JOXEPA. Orain arte eskartsu izan gera. ¿Zergatik, Jainko laztana, bialtzen diguzu samintasun au? . . . *(izke a aldatuaz)* Laister dira emen onezkero Xabier ta Iziartxo: pozez beterik etorriko dira, ta alaitasunaren ordainez negarra arkituko dute, . . . ¡gaxuak!

MIKEL. ¡A! . . . emen egon balitza Xabier! Etzuan Gorgonio'k ausarkeririk izango! Jakin du bai noiz etorri; morroya ere etxean ez dala.

JOXEPA. Txarrago izango zan: Xabier'ek onenian zerbait egingo zion.

MIKEL. Zigorrada batek etzion kalterik egingo.

JOXEPA. Bai, bañan: bear ez danen bat eginta ere . . .

MIKEL. Bear ez danik ez: ez da gelditu ere bear dana egin gabe.

JOXEPA. Ta ¿zer egingo degu?

MIKEL. Xabier ta Iziartxo etortzen diranean oldoztuko degu.

JOXEPA. Laister dira onezkero.

MIKEL. ¿Etxean ote degu azkeneko etxe-sariyaren artuagerkaya?

JOXEPA. Bai; or izango dala uste det.

MIKEL. Gorgonio ori gaiztua da, ta bada-ezpada billatzera nua.

JOXEPA. Ondo egingo dezu.

(Juaten da Mikel etxera: ta Andre Joxepa gelditzen da eserita, ixilik puxka batean, burua eskubien artean duela.)

## SEIGARREN AGERRALDIA

ANDRE JOXEPA: gero PATXI

---

JOXEPA. ¡Ai nere Jaungoiko laztana! . . . Zure laguntza bearrean arkitzen naiz gaurko atsekabe ta samintasuna iragopenaz eramateko.

(*Patxi dator zugazti aldetik txistuetan, otarra belarrez betia bizkarrian duela; ta deitzen dio Joxepak*) ¡Patxi!

PATXI. ¡Eup! . . . ¿Zer degu? (*gelditu az*)

JOXEPA. ¿Nundik zatoz?

PATXI. Zugaztiko zelayan izan naiz belarretan.

JOXEPA. ¿Ez al-dezu ikusi Gorgonio emendik dijuala?

PATXI. Bai andrea, ta . . . musu illunakin.

JOXEPA. Atoz onea; ta nekatzen egon gabe eratxi zazu otarra ori: (*urreratzen da Patxi*) ¿Esan al-dizu zerbait?

PATXI. Ez ba . . . Nik esan diot betiko bezela: «¿Zer degu Gorgonio? eguraldi ederra baserri alderako!»; ta berak, «bai» motel-motel esan da aurrera zijoan.

JOXEPA. Juateko obia da etortzeko baño.

PATXI. Orduan esan diot, itzerenbat ateratziaren; «¿Ze berri degu kale aldian?»; ta murrizki, «ez det berriketarako gogorik» esan da juan da.

JOXEPA. Gizon gaiztua da.

PATXI. ¿Gorgonio? . . . azpaldiko albiztea da ori.

JOXEPA. Beraz, lenagotik ere ezagutzen dezu?

PATXI. ¡Josu! . . . Ikastetxera juaten nintzan ezkero.

JOXEPA. ¿Zure irakasle izan al da bada?

PATXI. Bai andrea: sei illabetean. Doba'ko maisurik gaiztuena ori izan da. Bañan utzi zion, alperra dalako. ¡Amaika makillada artu ditut orrek emanda atzaparretan!

JOXEPA. ¿Bai, e?

PATXI. Ta guzia zan, ereztuna beti nerekin zalako.

JOXEPA. ¿Ereztuna?

PATXI. Bai andrea: *anilloa*: euzkeraz itz egiten zuenari *anilloa* ematen zioten, ta gero irakasleak . . . ¡zaparrada!

JOXEPA. Ta zuk euzkeraz itz egin bear.

PATXI. !Jakiña ba! . . . besterik ez det eta . . . Ta geñera, ¿ez al gera ba euzkaldunak? . . . ba . . . *euzkaldunak* esan nai du itz-egiteko euzkera dutenak.

JOXEPA. Ori da.

PATXI. Euzkal-ele estitsu au izan da beti gure guraso ta asaba guztiyen izkera, ta guri datorkigu berez jayotzatik: onek esan nai du, euzkera dala guretzat jatorrizko izkera: Beraz, euzkera gabeko euzkalduna, ez da euzkaldun jatorra.

JOXEPA. Ederki esana.

PATXI. Bai, au egiya da, . . . bañan ala ere, Patxi'k artu ditu ederrak Gorgonio'k emanda euzkeraz itz egitearren.

JOXEPA. Bai, gaiztua da Gorgonio: bañan ez nuen zineztuko ain biotz gogorra zuenik.

PATXI. ¡Biotz gogorra? . . . ¡bai ta gogorra gero! . . Nere anaya ezkondu zanian, . . . bai ba . . . aitak etzuen dirurik, eta Gorgonio'ri eskatu zion: ¡zoritxarrian! . . . ¿uneko amalau kendu zion.

JOXEPA. Amabost ere aitu det.

PATXI. Bai: Iturrioz'ko Kepa gizajoari: ta ez ori bakarrik. Orain lau urte inguru, Arrieta'tar Mirentxu'kin ezkontzeko ustean ibili zan; baña utz eman zion; da orregatik bere aitari kayan zuen bizibidea kendu zion.

JOXEPA. Ta ¿ain almen aundiya al-du iñori bizibidea kentzeko?

PATXI. ¡Izango ez du ba! Madrid'ko jauntxo guzien adizkide da ta . . .

JOXEPA. Gurekin ere nagusikeri aundiya egin bear du.

PATXI. Dollorkerien bat al-degu orain ere?

JOXEPA. Naiko dollorkeri da bai, arrasoi gabe etxetik

kanpora bialdu nai izateko.

PATXI. ¿Etxetik kanpora? . . .¿Zergatik?

JOXEPA. Ez dakigu ba.

PATXI. ¡Ori ere bai! . . . Jakin izan banu, . . . ¡arraye pola! . . . botako nuen zilipurdika zelayan bera.

(Au esatean eragingo dio gorputzari ta ikusiko ditu Xabier ta Iziartxo zugazti aldetik datozela)

¡Ixo! . . . Ara nun datozen Iziartxo ta Xabier.

JOXEPA. ¿Egitan? . . . ¡Ene bada! . . . Zuaz berak-gana otarra ta beste zerbait badute zuk ekartzeko: ta ez esan ezer.

PATXI. Ez. *(juaten da)*

JOXEPA. ¡Ai! aŭ bildurra dot albistea emateko! . . . Pozez ta alaitsu etorriko dira, bañan, jakiten dutenean . . . ¡gaxuak! . . .

(ixilik puska batean, datozan aldera begira eskuakin agurrak egiñaz)

## ZAZPIGARREN AGERRALDIA

LENGUAK eta IZIARTXO ta XABIER: gero MIKEL

---

JOXEPA. *(Iziartxo ta Xabier agertu baño len)* ¿Bazatozte?

IZIARTXO. *(alaitsu)* Bai ama ; ta poz-pozez nere amatxo maitia laztandutzeko. *(besarkada emanaz)*

JOXEPA. *(Iziartxo'kin besarka dago, ta itz egitean negarrak irtengo dio)* ¡Gaxuak! Zuek etzendutən uste izango gu atsekabez arkitzerik.

XABIER. ¿Zer da ama?

IZIARTXO. ¿Zer gertatzen da?

XABIER. Naigaberen bat?

JOXEPA. Bai, Xabier, bai: (*Patxi'ri*) Zuaz Mikel'gana, ta etortzeko. Emen dirala seme-alabak.

PATXI. (*artzen du belar-otarra*) Belarra eramanaz esango diot (*juaten da*)

IZIARTXO. Bañan, ¿zer gertatu da?

JOXEPA. Gorgonio'ren gaizkinai bat.

XABIER. ¿Zer egin du?

JOXEPA. Datorren asterako etxetik irten bearko degula esan digu.

XABIER. ¿Guk etxe ontatik irten?

JOXEPA. Bai; etxea erosi nai ez badegu irurogei milla errealian.

XABIER. ¡Irurogei milla errial! Badaki Gorgonio'k baserritarrentzat erreal askotxo dirana.

IZIARTXO. Ta ¿zergatik artu du Gorgonio'k bide ori?

JOXEPA. Bere gogua orrela dalako, esan digu.

IZIARTXO. ¿Gogoratzen zera, Xabier, nola esan nizun bildur nintzala Gorgonio'kin?

XABIER. Bai, gogoratzen naiz.
(*etortzen da Mikel*)

MIKEL. ¿Emen zerate?

IZIARTXO. Bai aita.

XABIER. Bai; emen gera, uste gabeko goibeltasuna degula.

IZIARTXO. ¿Ondo al-da berori?

MIKEL. Ez gaur goizeko alaitasunakin. Zuek etxean ikusteko pozez abeslari arkitu naiz goiz guzian; bañan Gorgonio'k kendu digu abestutzeko gogua. *(Joxepa'ri)* ¿Esan al diozu?

JOXEPA. Bai.

IZIARTXO. Ta nigatik dena. *(erdi negarrez)* Onek ematen dit atsekaberik aundiena.

XABIER. Zugatik ez da. Zuk ez dezu errurik.

MIKEL. ¡Esatea ere!

IZIARTXO. Bai! . . . nere ezkontzeagatik da ori.

JOXEPA. Nik ere ala uste det.

MIKEL. Ta ¿zer? . . . Gorgonio'kin ezkonduta ikustea bañon nayago det etxetik kanpora irten da ere Xabier'ekin ezkonduta ikustea.

IZIARTXO. Orregatik da bada nere atsekabe aundiya; ¡nigatik etxetik irten bearra!

MIKEL. Ez orregatik atsekabetu, Iziartxo. Gure zuganako maitasuna aundiya izan bada orain arte, aundiyagoa izango da aurrerakoan.

IZIARTXO. Ba, nere biotzeko samintasuna izan da, nigatik nere guraso maitiak atsekabez arkitzen dirala oldostutea.

XABIER. Ez bada orregatik keskarik izan.

MIKEL. Ez, Iziartxo: zuk ez dezu errurik. Gorgonio'ren dollorkeri bat izan da ori.

IZIARTXO. Orrela dala, nere Xabier ta nere gurasoen alkartasunean bizi ezkero zoriontsu izango naiz:

| | |
|---|---|
| | etxe gabe ez gera arkituko, bada izango da bateren bat gutzaz errukituko dana. |
| JOXEPA. | Nik ez det asmatzen nundik etorri liteken erruki ori. |
| XABIER. | Bai ama: baserri gabe ez gera gelditxko. Noski, guri adizkideren batek erosi lezake etxe au, ta orrela, bertan gelditzeko bidea izango degu. |
| JOXEPA. | ¡Bai zera! amesak dituk oyek. *(ikusten du apaiz jauna zugaztitik datorrela)* Apaiz jauna dator. |
| | *(jeikitzen dira)* |

## ZORTZIGARREN AGERRALDIA

LENGOAK eta APAIZA: gero PATXI

---

(Apaiza agertuko da alaitsu ta ajola gutxi emango dio Gorgonio'ren egipenari.)

| | |
|---|---|
| MIKEL. | Ongi etorri, apaiz jauna. |
| APAIZA. | Arratzalde on. *(agertzen da)* |
| | Baita berorri ere. |
| BESTEAK. | Ala ekarri beza. |
| | Jainkoak ala diola. |
| APAIZA. | *(Iziartxo ta Xabier'i)* Emen al-dira ezkonberriak ere? ¿Nola ibili zerate Donosti aldean? |
| XABIER. | Oso ederki, jauna. |

IZIARTXO. Ondo, jauna.

APAIZA. Eztai-ibilketa luzea egin dezute.

XABIER. Ez ba, Jauna. Larunbatean juan giñan eta orain etorri gera.

APAIZA. Bañan, ez dezute ezkonberri itxurarik.

XABIER. Alaitsu ez gaudelako esango du?

APAIZA. Jakiña ba . . . Nik uste nian gaur «Mendigain' en» txupinaso ta tiruak ere izango zirala.

MIKEL. Naikua *tiru* izan degu bai!

APAIZA. ¿Zer izan dezute bada?

MIKEL. Gorgonio izan degu, Gorgonio; ta arek kendu dizkigu jolaserako gogo guziak.

APAIZA. ¿Gorgonio'k? . . . ¡Ba ba ba! . . .

JOXEPA. Bai jauna, Gorgonio'k.

APAIZA. ¿Zer egin dizute?

MIKEL. ¿Zer egin? Etxetik irtetzeko agindua ekarri, erosi nai ez badegu.

APAIZA. ¿Egiya al-da, Xabier?

XABIER. Bai jauna; ala esan dirate.

APAIZA. Ark egiteko ez dek asko; lenbizikua ez dek eta.

XABIER. Ala da bai: ¡bañan ez diot utziko ordaiña eman gabe!

APAIZA. Ez estutu orregatik . . . ¿Ze uste dezute? ¿Gaiztotasunaren alde izango dala beti garaipena? . . . Ez! . . . Gaiztakeriak, gaur ezbada biyar, biyar ezbada etzi, edo ludi ontan ezbada betiraunean, izango du bere zigorkada.

XABIER. Bai, bañan. . . ta ¿bitartean?

APAIZA. Bitartean, zerbait izango dek. ¿Zenbat eskatzen du etxeagatik?

JOXEPA. ¡Irurogei milla errial!

APAIZA. ¿Irurogei milla? ¡Alajaña!

JOXEPA. Bai jauna. ¡Beorrek erosiko balu. . .

APAIZA. ¡Ja ja ja! . . . ¡Nik erosi! . . . ¿Ze uste dezute? ¿Errespontzuak orrenbesteraño ematen dutela?

MIKEL. Ba... berorrentzat asko bada, guretzat geyago da.

XABIER. Ta, ¿berorrek ez al-daki zeiñek erosi lezaken? Guri dagokiguna da, esagun batek edo adizkideren batek erostia, bertan jarraitutzeko.

APAIZA. Bai; ori izango litzake biderik onena. Bañan. . . (*bestetuaz*) Orain beste gauza bat. Ni ere zueri albiste bat ematera etorri naiz.

IZIARTXO. Gorgonio'rena bañon obea izango al-da.

APAIZA. (*Iziartxo'ri*) Zuri, besteai bañon geyago dagokisuna da.

IZIARTXO. ¡Ze ote da ba!

JOXEPA Esan beza laister.

XABIER. Ona bada.

APAIZA. Onelako albisteak ez dira bat-batean esatekoak, geldi-geldi baizik.

MIKEL. ¡Ze ote degu!

APAIZA. (*Iziartxo'ri*) Zure aita bizi da.

IZIARTXO. (*arrituta*) ¿Bizi dala nere aita?

(Besteak ere agertuko dute arritasuna musuetan)

APAIZA. Bai, ta ez urruti ere.

IZIARTXO. ¿Egiya al-da, jauna?

APAIZA. Bai, egiya da: ta zuk ere ikusiko dezu nai badezu.

IZIARTXO. ¡Ene! . . . ez dakit zer esan ere.

MIKEL. (*musu illunaz*) ¿Ta nun izan da orain arte agertu gabe?

APAIZA. Urruti arkitzen zalako ez du jakin orain arto gure iragarriyaren berri.

IZIARTXO. Ta ¿zein da? ¿nolakua da?

APAIZA. Gizon itxurazkua.

MIKEL. Beren gaztetako egikerak ez dira ospagarriyak.

APAIZA. Gaztetan txarra izan arren, Jaunaren eskuak biurtu lezake bide onera. Badakizute Paulo, Agustin, Magdalena ta beste askoren bizitzako gertaera. Gaizpidez eraman zuten beren gaztearoa, bañan gero, zintzotu ziranean ta gaiztakeriari gorrotua artu ziotenian, beren biotzak arkitu ziran Jaungoikuaganako maitasun-garretan; ta orain ikusten ditugu gure gogo-zaindari izan ditezen. Bekatari aundiyena izan da ere, Jaungoikuaren eskarrak ekarrri lezake bide onera deun aundiya izateko.

JOXEPA. Bai jauna: ori egiya da.

IZIARTXO. ¿Nun dago bañan nere aita?

APAIZA. Erri ontan.

IZIARTXO. ¿Beorrek ikusi al-du?

APAIZA. Bai, ikusi det: ta gizon ederra egitan.

MIKEL. Barrengo edertasuna bear degu.

APAIZA. Biyak baditu obe: Orrela da Silberi jauna.

IZIARTXO. ¿Silberi al-du izena?

APAIZA. Bai, Iziartxo. Silberi da zure aita: gizon trebe ta . . . aberatsa.

JOXEPA. ¿Aberatsa al-da?

APAIZA. Bai, oso.

IZIARTXO. Ta ¿bai al-daki nere aitak ezkonduta arkitzen naizela?

APAIZA. Bai, badaki: ta zeinekin ere bai.

XABIER. Ta ¿zer deizkio?

APAIZA. Egin dezuten guzia, arentzat ondo egiña dago. Orain, bere gogorik aundiyena da, zuek ikustea batez ere bere alaba Iziartxo.

IZIARTXO. Ta ¿noiz etorriko da gugana?

APAIZA. Oraintxe nai badezute.

IZIARTXO. ¿Bai?

APAIZA. ¿Etxean al-dezute morroya?

MIKEL. Bai jauna: or izango dala uste det.

APAIZA. Deitu zayozute.

MIKEL. (*Patxi'ri deituaz*) ¡Patxi! . . . ¡Patxi!

PATXI. (*Barrendik)* ¡Eup!

MIKEL. Ator onea.

PATXI. Beriala. . . (*atea irikitzean*) ¿Zer degu?

APAIZA. Patxi

PATXI. ¿Zer nai du, jauna?

APAIZA. ¿Badakit. . . or. . . (*eskuakin erakutsiaz*) zelai-

guneau, nola dagon eseri-toki bat zugatz aundi baten azpiyan!

PATXI. Bai jauna.

JOXEPA. Ba, an inguruan ikusiko dek zaldun bat, bizarduna, ondo jantzita, ta laztozko kapelakin. Esayok irekin etortzeko: Nik esan diyatela.

PATXI. Ondo da jauna,. *(juaten da)*

JOXEPA. ¡Iziartxo! *(gozaratuaz)* Aita aberatsa omen da.

IZIARTXO. ¡Ai!... ¡au larritasuna! *(eskua burura eramanaz.)*

APAIZA. ¿Zer da? . . . ¿Larritasuna aita ikusteko?

IZIARTXO. Nik ez dakit. . . zer dan. . . bañan. . . ¡ene! . . .

(Andre Joxepa'k elduko dio burutik, ta biyak alkarren onduan eserita egongo dira.)

JOXEPA. Gaxotu bear du nere alabatxo kutunak!

MIKEL. Ori bear genduka orain!

XABIER. Ez izutu, Iziartxo.

APAIZA. Bañan ¿Zer dezu?

IZIARTXO. . . . Ez da ezer. . . txoxabioa. . .

JOXEPA. Ekarri zazu, Xabier, ur prexkoa.

IZIARTXO. Ez . . . ez ama . . . ez ekarri, Xabier . . . ez det ezer. . . iya juan da.

APAIZA. *(ezker aldera begira)* Emen da gure Silbori jauna. Aurrera.

JOXEPA. ¡Iziartxo! . . .

IZIARTXO. ¡Ama!

---

## BEDERATZIGARREN AGERRALDIA

LENGOAK eta SILBERI: gero GORGONIO (*barrendik*)

---

(Silberi dator zaldun-jazkera apaiñakin. – Patxi agertuko da lenbizi.)

APAIZA. (*Patxi'ri*) Eskerrikasko, Patxi.

PATXI. Ez da ezeri: gero arte. (*juaten da*)

SILBERI. Juangoikuak arratzalde on dizutela.

APAIZA. (*adizkidetasunez*) Aurrera, Silberi. Ara emen zure sendi zoriontsua.

SILBERI. ¿Nun da nere alaba?

APAIZA. Iziartxo: ara emen zure aita.

SILBERI. ¡Iziartxo! ¡nere alaba maitea!

(Iziartxo eserita dago amaren onduan, ta Silberi makurtzen da bere aurrean; ta puxka batean ixilik.)

IZIARTXO. (*besoa luzetuaz*) ¡Aita! . . . ¡aita!

SILBERI. ¿Ez al-da arkitzen ondo?

APAIZA. Zure etorrerak izutu du; bañan ez da ezer.

JOXEPA. ¡Gaxua!

SILBERI. ¡Iziartxo! nere biotzeko alaba!

IZIARTXO. ¿Nere aita al-da?

SILBERI. (*Artzen du Iziartxo'ren eskua bere biyen artean.*) Bai, Iziartzo: ni naiz. . . zure aita: ez det merezi zuk aitatzat artutzea: biotz gogorrekua izan nintzan; bañan Jaungoikuari eskerrak, garbaitu nintzan, ta damutasun aundiya izan du nere biotzak: ta zure amak ere ala izan zuen il baño len.

IZIARTXO. ¡Il zan nere ama!

SILBERI. Bai, Iziartxo; il zan: bañan bere gogoa, bere anima bizi da zeruan

IZIARTXO. ¡Gaxua! Goyan bego!

SILBERI. Bai, Iziartxo: Goyan dago. Amerika'n euskaldun apaiz baten erakusbideen bitartez eleizaratu giñan. Donetasunez beterik il zan zure ama. Jaunak barkatu zion, neri barkatu ziran bezela . . . ta zuk, nere biotzeko alaba: ¿barkatzen dirazu?

IZIARTXO. Bai, aita . . . Jaungoikua da gure bide, egi ta bizia . . . Bere naia da nere naia ere.

SILBERI. Berak onetsi zaizala, Iziartxo! . . Orain nere naitasun aundiyena da, gaztetako utz-egiteak ordaindu, ta zuekin, alkartasun eder ontan, guztiok etxe baten bizitzea.

IZIARTXO. Ori da nere naitasun osoa.

SILBERI. Eman zadazute bada besarkada bana.

(Etortzen da Patxi atetik)

PATXI. Nagusi jauna: Gorgonio etorri da, ta beorri deitzeko esan dit

MIKEL. ¡Zer nai ote du! Esayok onea etortzeko.

PATXI. Esan diot; bañan ez du nai. Baratzan gelditu da.

MIKEL. ¡Orain ere zerbait ekarriko du orrek!

XABIER. ¿Gorgonio al-da? (*amorruz*) Ni juango naiz.

APAIZA. Zu geldi.

(Juaten dira Mikel ta Patxi.)

JOXEPA. Gorgonio ori da gure ondamendiya.

IZIARTXO. Ta nigatik, aita.

SILBERI. ¿Jakin al liteke zein dan Gorgonio ori?

APAIZA. Etxe onen jabe dan jaunaren diru-zaya: ta, ustekabe, gaur goizean etorri da sendi zoriontsu au naigabetutzera, esanaz etxea erosi nai ez badute kanpora juan bearko dutela.

SILBERI. Beraz, ¿salgai daukate etxea?

APAIZA. Ala dirudi. Bañan, onek esan ditenez, beok kanpora ateratziaren egiten du ori.

SILBERI. Nik erosi nesake.

JOXEPA. ¡Ene bada! ¡ori bear degu ba!

IZIARTXO. Bai aita; al-badu erosi beza.

XABIER. Gure zoriona izango litzake.

SILBERI. Banua bada itz egitera.

APAIZA. Bañan ez esan zein zeranik.

JOXEPA. Nik lagunduko dizut.

APAIZA. Ez: dijuala bakarrik.

JOXEPA. Tira ba: zuaz igez egin baño len. Emendik.

SILBERI. Ondo da. *(juaten da etxearen alboko bidetik.)*

JOXEPA. ¿Erosiko ote du? ¡Ene bada!

APAIZA. Nik ala uste det.

XABIER. Asko izango bañan irurogei milla errial.

IZIARTXO. ¿Izango ote du orrenbeste diru?

APAIZA. Baita geyago ere.

JOXEPA. Orduan aberatsa da!

APAIZA. Bai, andre Joxepa: gu baño geyago.

(Etortzen da Mikel)

JOXEPA. ¿Zer da Mikel?

MIKEL. *Teleponema* batekin etorri da Gorgonio, ta esan dit musu illunakin. «ara emen idazkiz Leon jaunaren agindua»; eta eman dit irakurtzeko. Esaten zuen, etxea salgei jartzen dala ta erosi nai ez badegu, lenbailen beste bat billatu bearko degula. Orretan ai gerala etorri da Silberi, ta ondo egin du, bada bestelaz laister giñan muturka.

JOXEPA. Silberi, etxea erosteko ustean juan da!

MIKEL. *(Pozez, zer esan ez dakiela)* ¡E! ¿Zer? .. erostera guretzat?

IZIARTXO. Bai aita: erosten badu, guretzat izango da.

XABIER. ¡Ai orrela balitza! Ez litzake geyago etorriko Gorgonio.

(Silberi ta Gorgonio'ren izketa aitzen da eskubiko bidetik. Etxearen alboan agurka daudela adiraziko dute)

SILBERI. Ondo da, Gorgonio jauna.

GORGONIO. Gaur idatziko diot Leon jaunari, ta biyar izango det erantzuna.

SILBERI. Biyar arte bada.

GORGONIO. Bai, agur.

SILBERI. Agur.

(Silberi etorri arte denak ixilik, zer egin ote duten jakin nayan. Etortzen da eskubiko bidetik)

APAIZA. *(Silberi ikuztean)* ¿Da?

SILBERI. Ederki . . . gurea izango da etxea.

XABIER. ¿Egiya al-da? *(Denak pozez)*

| | |
|---|---|
| SILBERI. | Bai. |
| MIKEL. | ¿Egitan? |
| SILBERI. | Ara emen eroz-agerkaya. (*Erakusten du idazki bat*) |
| IZIARTXO. | Jaungoikuak sarituko dio aita. |
| SILBERI. | Berari esker guziak. Badezute etxea. Baserri-etxe ontako jabeak zuek izango zerate; ta bertan guztiok, nere alabatxo maitearen laguntasunean atsegintsu biziko gera. Au izango da neretzat zoriontasunik aundiyena: nere aberriyan ta nere sendi maitearen ondoan gentzatsu ta azkatasun deunean bizitzea. |
| IZIARTXO. | Bai, aita. |
| APAIZA. | ¿Orain pozik al zerate? |
| XABIER. | Zoriontsuak gera |
| MIKEL. | Bai jauna bai. |
| JOXEPA. | ¡Ene! ¡au poza! |
| IZIARTXO. | ¡Au atsegiña! ¡Aitatxo! (*Besarkatuaz*) |
| SILBERI. | ¡Iziartxo! (*Besarkatzen ditu Iziartxo ta Xabier*) |

AZKENA

